# MAGDALAKO MARIA 07/22an

**Sarrera-oharra**

Ondo etorri, senideok, Madalena eguneko eleizkizun honetara.

Madalena omentzeak, apostolutza aintzat hartzea dakar, berbizkundearen testigutza norberetzea dakar, emakumea aintzat hartzea dakar, pekataria ez baztertzea dakar… Jesusen jarraitzaile izan gura dauanarentzat, behintzat.

Parrokiaren zaindari omentzen dogunok, aukera paregabea dogu, Jesukristoren gure jarraitzailetza barriztatzeko, berbizteko eta erromeria baino apur bat harago joateko. Izan daigun gogoko.

**Sarrera-abestia**

Goazen guztiok batera Jaunarekin egotera (2)
—Pozik alkartu gaitezen, Jauna dogu-ta laguntzen (2)

**Damu-otoitza**

Magdalako Maria gogoan dogula, begiratu deiogun gure inguruko geure pekatuari: erruki bakoak gara, emakumea aurrean erabilia da… Egin deiogun dei Jainkoaren errukiari:

—Jesus Jauna, zeure taldean emakumeak ere o**nar**tu zenduzana , *erruki, Jauna*.
—Jesus Jauna, pekatariak bihurtzeko ahal**me**na zenduana, *Kristo, erruki*.
—Jesus Jauna, zeuri jarraitzera dei e**gi**ten deuskuzuna, *erruki, Jauna*.

**Aintza**

† Aintza, zeruetan, Jainkoari: *bakea lurrean gizonari*.

† Zeu bakarrik santua, Jesukristo, Espiritu santuarekin, Jainko Aitaren argitan…

(edo)




**OTOITZA** (*Egin daigun otoitz*)

Oi Jainko, zure Seme bakarrak
bere biztueraren barri pozgarria guztiei iragartzeko
eginkizuna emon eutson Maria Magdalenari;
egizu, haren otoitzari esker eta haren ejenpluari jarraituz,
emon daigula Jesu Kristo berbiztuaren barri
eta ikusi daigula zure aintzan errege.
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

**Lehenengo irakurgaiari**

*Egia esan, ez gagoz ohituta laztan-berbak entzuten, ez-eta, agerian bada, esaten ere. Gaurkoan aukera bat dogu, eta aprobetxatu daigun: Jainkoak maitale lez bilatzen gaitu.*

*Aurkitu neban neure bihotzeko kuttuna.*

**Kantarik Ederrena liburutik** (*Kt* 3, 1-4a)

Hau dino emazteak:
«Neure bihotzeko kuttunaren bila ibili nintzan gauez, ohean;
bila ibili, bai, baina aurkitu ez!
Jagi eta herrian zehar abiatu nintzan,
kale eta plazetan zehar,
neure bihotzeko kuttunaren bila;
bila ibili, bai, baina aurkitu ez.

Herrian ebiltzan zaindariek aurkitu ninduen.
"Ikusi ete dozue nire bihotzeko kuttuna?",
itaundu neutsen.
Hareengandik aldendu nintzaneko,
aurkitu neban neure bihotzeko kuttuna».
Jaunak esana.

**Erantzun Salmoa** (Sal 63 [62], 2. 3-4. 5-6. 8-9 (R/. ik. 2c))

**R/. Zure egarriz daukat gogoa, Jauna, ene Jainkoa.**

Jainko, Zu ene Jainko,
goizetik nabilkizu bila,
zure egarriz daukat gogoa, zure gurari biziz ni nazan guztia,
lur idor, agor, ur bakoa lez. R/.
Holan egon nahi dot santutegian Zuri begira,
zure indarra eta ospea ikusiz.
Bizia baino ederragoa da-eta zure maitasuna,
goratuko zaitue nire ezpanek. R/.

Holan nahi zaitut bedeinkatu neure bizitzan,
eskuak jaso zure izenean.
Jakirik gozoenez lez naz asetuko,
eta nire ezpanek poz-oihuz zaitue goratuko. R/.

Zeu izan zaitut-eta laguntzaile;
pozez egingo dot oihu zure hegoen kerizpean.
Zuri lotua nago osorik,
eta zure eskumak deust eusten. R/.

**Ebanjelioari sarrera-oharra**

*Oraindino harritu egiten gaitu. Baina Jesusen taldean emakumeak ere ba ebiltzan, eta aurretiaz pekatari markatuak gainera. Ez ete gaitu honek kezkatu eta adoretu behar?*

*Egin deiogun harrerea ebanjelioari Aleluia abestuz, zutunik.*

**R/. Aleluia.**
**V/.** Esaizu, Maria, zer dozu ikusia?
Berbiztuaren hobia,
bizirik dan Kristoren argia. R/.

*Zer dozu negarrez, emakume? Noren bila zabiz?*

**Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik** (Jn 20, 1-2.11-18)

Astearen lehen-egunean, Maria Magdalena hilobira joan zan goizean goiz, oraindino ilun egoala, eta harria hilobitik kenduta ikusi eban. Orduan, Simon Pedrogana eta Jesusek maite eban beste ikasleagana bihurtu zan lasterka, eta esan eutsen: «Eroan egin dabe Jauna hilobitik, eta ez dakigu non

jarri daben».

Maria hilobi ondoan egoan, kanpoan negarrez. Eta, negarrez egoala, hilobirantz makurtu zan eta aingeru bi ikusi zituan, zuriz jantzita, Jesusen gorpua egon zan lekuan jesarrita, bata burualdean eta bestea oinetan. Aingeruek esan eutsoen: «Zeri negar, emakume?» Mariak erantzun eutsen: «Nire Jauna eroan dabe, eta ez dakit non ipini daben».

Hau esan eta berehala, atzera bihurtu eta Jesus ikusi eban zutunik, baina ez zan konturatu Jesus zanik. Jesusek esan eutson: «Zeri negar, emakume? Noren bila zabiltz?» Mariak, ortuzaina zalakoan, esan eutson: «Jauna, zuk eroan badozu, esaidazu non ipini dozun, eta neuk hartuko dot».

Jesusek esan eutson: «Maria!» Honek, hurreratuz, esan eutson hebreeraz: «Rabbuni!» (hau da, «Maisu!»). Jesusek esan eutson: «Itzi nagizu, ze, oraindino ez dot Aitagana igon. Zoaz nire senideakana eta esaiezu: “Neure Aitagana eta zuen Aitagana noa, neure Jainkoagana eta zuen Jainkoagana”».

Joan zan Maria Magdalena, eta barri hau emon eutsen ikasleei: «Jauna ikusi dot, eta hauxe eta hauxe esan deust».

Jaunak esana.

**Homilia**

**ESKARIAK**

† Egin daiguzan gure eskariak maite dauanak dakila Jaunaren barri emoten gogoan izanik:

**HERRI OTOITZEAN**

Batek — Danek — Udaia'18

Es - ka -tzen deu - tsu - gu, Jau - na. Ai - ta_A - ma zai - tu - gu— ta.

—Eleizearen alde: Jauna maite-maite izan daian eta baita gaurko gizakia ere, honi Barri Ona iragarri ahal izan deion eta entzuna izan daiten, *eskatzen deutsugu, Jauna*. (**ZEUGAN DOGU USTE ONA**)

—Gurasoen alde: seme-alabei Jesusen barri emoten ahalegindu

daitezan, hareengandik gero heldutasuna eta maitasun-egintzak jaso daiezan, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Jesus Jaunaren barri emoten dihardUen misiolarien alde: herri-xehea maite-maite izan daien, harengandik ikasteko ere gauza izan daitezan, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Izurrite aldian argiago, alkarregaz baino ez garala salbauko jakinda, danok ahalegindu gaitezan gomendioei jaramon egiten eta alkarren ardurak hartzen, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Eukaristia ospatzeko zoria dogunok Jesus Jauna ezagutzeko eta maitatzeko zabaltasunez hurreratu gaitezan beragana, eta gero haren barri emon daigun hitzez eta bizieraz, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

† Maitasunezko iturri agortezina zaran Jainko Jauna: jakin daigula maitasuna aintzat hartzen eta haren testigu izaten. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

**Oparien gaineko OTOITZA**
Onartu, Jauna, Maria Magdalena santuaren oroitzapenean
ekarri doguzan emoitzak,
zure Semeak bihotz onez hartu eban-eta
Maria Magdalenak berari erakutsi eutson maitasuna.
Errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

**PREFAZIOA**
Jauna zuekin ............................................ Eta zure espirituarekin
Gora bihotzak ................................................ Jaunagan daukaguz
Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari ....................... Egoki da eta zuzen

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
guk Zu, Aita ahalguztiduna, gauza guztietan goratzea
eta autortzea zure errukia ez dala
zure ahalmena baino txikiagoa,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

Ha baratzean Maria Magdalenari agertu jakon-eta;
izan ere, Mariak hemengo bizitzaldian maite eban Jesus

hiltzen ikusi eban kurutzean,
haren bila joan zan hilobiratua egoanean,
eta bera izan zan lehenengoa
hilen artetik berbiztua adoratzen;
Jesusek, barriz, apostoluen aurrean
apostolu-eginkizuna emonez ohoratu eban,
bizi barriaren barri ona
munduko azken mugetaraino heldu eiten.

Horregaitik, geuk ere, aingeru eta santu guztiekin batean,
goresten zaitugu, Jauna,
poz betean [esanez] kantari:
Santu, santu, santua

**Santu zara**, bai, Jauna,
eta diren guztiek emoten deutsue behar dan gorespena.
Zure Seme Jesukristo gure Jaunaren bitartez,
eta Espiritu santuaren indarrez,
Zeuk biziazoten dituzu guztiak eta santutzen,
eta zeuk diharduzu, beti ta beti, zure herria batzen,
eguzki alde batetik besteraino opari garbia eskeini dakizun.

**Apalik, beraz, Jauna**, eskatzen deutsugu:
santu egin daizuzala, zeure Espirituaren indarrez,
oparitarako ekarri ditugun ogi ta ardao honeik,
zure Seme Jesukristo gure Jaunaren
Gorputz eta † Odol izan daitezan,
misterio honeik berak esanda egiten ditugun ezkero.

**Berak**, saldua izan zan gau haretan,
ogia hartu eta, zuri eskerrak emonez, zatitu eban,
eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

**Hartu eizue ta jan guztiok honetatik:**
**hau neure gorputza da-ta,**
**zuentzat emongo dana.**

**Afal ondoan,** bardin,
Kaliza harturik eta zuri eskerrak emonez,
bedeinkatu eban eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

**Hartu eizue ta edan guztiok honetatik:**
**hau neure odolaren kaliza da-ta,**

**itun barri ta betikoaren odola,**
**zuentzat eta guztientzat**
**pekatuak parkatzeko isuriko dana.**
**egizue hau neure oroigarri.**

**Hau da sinismenaren misterioa**
**** Ogi-ardao honeik hartzean…***

**Horregaitik**, Jauna, guk,
zure Semearen nekaldi osasungarria
eta hilen artetik biztuerea
eta zeruratze miragarria gogoratuz,
haren azken etorrerea itxaroten dogula,
zuri eskerrak emoteko eskeintzen deutsugu
opari bizi eta santu hau.

**Begira, Jauna**, zure Elizearen eskeintza honi:
ikus eskeintza honetan
zurekin baketu gaituen Jesukristoren oparia;
iguzu, Jauna,
zure Semearen gorputz-odolak hartzen ditugunok,
Espiritu santuaz beterik, Jesukristogan
gorputz bat eta espiritu bat izan gaitezela.

**Berak egin gaizala** zuretzat betiko opari,
zure aukeratuekin zerua jaritsi daigun:
lehenengo, Andra Maria, Jaungoikoaren Ama beti Birjinearekin,
haren senar Jose santuarekin,
zure apostolu ta martiri dohatsuekin,
Mari Madalenarekin eta santu guztiekin;
ba dakigu, euron bitartez
zure laguntza izango doguna non-nahi ta beti.

**Gu zurekin** baketzen gaituen opari hau izan bedi, Jauna,
mundu guztiarentzat bake ta salbamen.

**Mundu honetako** ibilaldian,
sinismenez ta maitasunez bete egizu zure Eleizea:
zure zerbitzari **Frantzisko**, gure Aita Santua,
**Joseba**, gure gotzaina,
beste gotzain eta abade guztiak

eta zeurea dozun herri osoa.

**Entzun, bihotz one**z, zure aurrera deitu dozun
familia honen otoitzak.
Aita guztiz ona, ekarri zeuregana
mundu zabalean banaturik dabiltzan zure seme-alabak.

**Hildako** gure senideak (I., eta I.),
eta mundu honetatik zurekin adiskide joan diran guztiak,
hartu eizuz, bihotz onez, zeure zeruan;
geuk ere sinisten dogu
zure aintzaren zorion betea izango dogula betiko,
eurekin batean.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez:
Beronen eskuz emoten deutsazuz ondasun guztiak munduari.

**HONEN BITARTEZ…**
—Amen.

Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.
GURE AITA, ZERUETAN ZARANA…

**Jaunartzerako abestia**

**Jesus maitea zan** azken Afarian
bera emon nahirik ardao ta ogian.
Guretzat zalarik hilteko aurrean
maitasunak eukan bihotza menpean.

**Gurtu daigun beti Jesus Jainko Jauna,**
**sakramentu honetan gurekin dagoena.**

Apostoluei minez esan deutse:
«Ni gaur saldua naiz, bihar hilgo nabe.
Aitarenganako denbora jat bete,
hona orain zenbat zaituedan maite.»

**Gurtu daigun beti Jesus Jainko Jauna,**
**sakramentu honetan gurekin dagoena.**

**Jaunartze ondorengo OTOITZA**

Maitasun iraunkorrez lotu jakon eten barik

Maria Magdalena santua Kristo bere Maisuari;
egizu, Jauna, zure misterioak santutasunez hartzeak
sartu deigula bihotzean maitasun hori bera.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez

**Onespena - Azken agurra**
† Jauna zuekin.
—Eta zure espirituarekin.
† Bedeinka zaizela Jainko ahalguztidunak: Aitak eta Semeak...
—Amen.
† Zoaze Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jainkoari.

# MAGDALAKO MARIA 07/22an



**Sarreran**
Aita baten semeok,
sinismen bakar bat dogunok,
anai artean batu garanok,
kantuz gatoz, kantuz zugana, Jauna.

Seme gara, bai, baina seme izaten ba ete dakigu?
Anai gara, bai, baina anai izaten ba ete dakigu?
Seme izatera, anai izatera, Jauna, heldu nahi dogu.

**Erantzun Salmoa** (Sal 63 [62], 2. 3-4. 5-6. 8-9 (R/. ik. 2c))

**R/. Zure egarriz daukat gogoa, Jauna, ene Jainkoa.**

Jainko, Zu ene Jainko,
goizetik nabilkizu bila,
zure egarriz daukat gogoa,
zure gurari biziz ni nazan guztia,

lur idor, agor, ur bakoa lez. R/.

Holan nahi zaitut bedeinkatu neure bizitzan,
eskuak jaso zure izenean.
Jakirik gozoenez lez naz asetuko,
eta nire ezpanek poz-oihuz zaitue goratuko. R/.

Zeu izan zaitut-eta laguntzaile;
pozez egingo dot oihu zure hegoen kerizpean.
Zuri lotua nago osorik,
eta zure eskumak deust eusten. R/.

**ESKARIETAN**

*...eskatzen deutsugu, Jauna*. / **ZEUGAN DOGU USTE ONA**

**Jaunartzerako abestia**

**Jesus maitea zan** azken Afarian
bera emon nahirik ardao ta ogian.
Guretzat zalarik hilteko aurrean
maitasunak eukan bihotza menpean.

**Gurtu daigun beti Jesus Jainko Jauna,**
**sakramentu honetan gurekin dagoena.**

Apostoluei minez esan deutse:
«Ni gaur saldua naiz, bihar hilgo nabe.
Aitarenganako denbora jat bete,
hona orain zenbat zaituedan maite.»

**Gurtu daigun beti Jesus Jainko Jauna,**
**sakramentu honetan gurekin dagoena.**

## AZKENEAN

**ALKARTUTA GOAZEN AURRERA KANTARI,
BIHOTZAK ZABALDUZ BETIKO POZARI (bir).**

*Maitasun ta zuzentasunez dezagun
lortu anaien askatasun,
Badator-eta Jaunaren betiko egun.
Hor dugu distiratsu egunsentiko argitasun.*